*Ordu atseginenak iragan ditiagu tabernetan. Itzulpen han Jon Casenaverentzat arno edalontzi hustuen oroitzapenez.*

Joseba Sarrionandia

*Xinako Erresuma handia zen* Suan-Tsong *Enperadorearen garaian, VIII mende inguruan. Garai honetakoa zen* Li-Po, *poeta handi hura. Enperadorearen Olehiaria izandu zen, moznortia zelakotzat baztertu zuten arte.*

*Orduan,* Li-Po *oihanetara aldendu zen. Edateko, abesteko, pentsatzeko eta idazteko askatasunaren bila. Eta aske bizi izan zen geroztik, edariarekin zuhaitz lotatuen gerizpean eseririk, errekastoen artean salto eginik, izarren azpian loak harturik, xorinoei arnoa erakutsi eta diosala eginik.*

*Bizi izan zen bezala hil zen. Gau batetan, ohi bezain horditurik zegoelarik, lakuko ur gardenetan isladatzen zen ilargia besarkatzeko makurtu zen, xalupa irauli, eta ito egin zen.*

*Euskal itzulpena moldatzeko erdara hurbiletako bersio desberdinetan oinarritu naiz. Baina ezin esan gabe utzi leku komun bat, xinar poesia beste hizkuntzetara ezin daitekeela itzuli halegia. Gehiago zehaztuko dut. Xinar idazkera, irudiena, erakuslea da, erreferentziaz eta hamaika esanahiz betea. Gure itzulpenak eszena bat erakutsiko du baina xineraz hamaika zituen, hitz edo irudi bakoitza, berez, eszena bat zelako.*

*Adibidez:* urdina *hitzean "egurra ebakitzea", "ura", "zetazko gauzak" aipatzen dira xineraz; itzultzean galdu egin dira aipamenak. Maiz esaten da sartaldeko poema ereduak laburrak direla baina ez dira laburrak, itzultzean eta itzulirikoa gurearekin konparatzean bakarrik dira laburrak, geuk laburtzen ditugulako. Beraz, esan bezala, ezin da xinar poesia beste hizkuntzetara itzuli. Ez galdetu, bada, zer den ondoan datorrena. Ene asmoak bete ditut,* Li-Po *handiaren eskritura poetiko aipamenez betea, esanahiz ugaria eta anbiguoa, itxuraldatu arren, euskaraz itsusia bihurtu ez badut.*

*Ez da hau gogoetatan luzatzeko lekua, baina gauza bat esan nahi dut sortaldeko pentsamoldeari buruz. Eta, bidenabar, poema hauei buruz. Ekialdeko pinturan, teatroan eta poemagintzan ez da mendebalean hain lanet zaigun osotasuna bilatzen, detailea baizik. Xinako poemagintzak, japoniarrak bezala, ez du hantutasunik ez oinazerik, ez da konplexua, ez da arazo handiei buruz abiatzen. Laztan laburrak dira poemak eta, burruka garrantzitsuetarako ez direnez, brisararentzat gelditzen dira.*

Hemen, mendi urdinean zergatik nagoen galdetzen didazue.
Nik ez dut erantzuten, irri egiten dut soilik, bihotz lasaiez.
Erori egiten dira liliak, erioan doa ura, haztarrenik utzi gabe aldentzen da dena.
Hau da ene unibertsoa, gizasemeen munduaz desberdina.

Arno pitxer bat lilien artean.
Ez dago lagunik nirekin edateko,
baina ilargia gonbidatzen dut
eta, ene itzalarekin, hiru gara...
Halaere, ilargiak ez du edaten,
eta ene itzalak aski du ni iarraitzea.
Laster aldenduko naiz;
alaitasunaren haroa da udaberria!

Haizea aldeko, itsasoetako marinela
aingura altzatu eta bidaia luzera abiatzen da.
Laster ezabatzen da haren lorratza.
ortzeko hegaztiarena bezala.

Osin sakonean loratzen den mertxikondoa naiz.
Norantz begiratuko dut? Nori eginen diot irri?
Zu ortzean dirdiratzen den ilargia zara.
Iragaitean oren betez behatu ninduzun;
eta betirako hurrundu zinen gero.
Ezpatarik zorrotzenak ere ezin dezake, geldiarazi nahirik,
errekako ura bitan ebaki.
Ene gogoa, errekako ura bezala, ez da gelditzen, bedoa
eta zure xerka doa beti.

Zenbat iraun dezake, zenbat luza daiteke urrearen gozadura?
Ehun urte gehienez: gure esperantza gehiena ere amaitzen da orduan.
Bizi eta, gero hil; hau da gizasemearen zihurtasun bakarra.
Entzun ezazue, han hurrun ilargiaren errainuen azpian, simioa,
makurturik eta bakarrik, nigarrez ari da hilobien gainean.
Eta orain bete egidazue edalontzia: edanaldi batez hustutzeko orena da.

Erdibitu egiten du ura branka zorrotzak;
ehun oineko luzera du itsasontziak.
Hedatu egiten du oihala haize hozkirriak;
ortzemugan sartzen da eguzkia.
Hemen dago, oraindik, agurtzerakoan
edaten genuen arnoa, baina aldendu egin zara zu.
Zu zaitut gogoan, baina ez zaitut erideiten;
herabe senditzen naiz ur urdina behatzean.

I

Ez da iturrira itzultzen erioan doan ura,
ez da eroritako lorea ere
erortzen utzi duen zuhaitzera itzultzen.

II

Hemen izan zen Wu erregeren behialako etxea;
aske hazten da egun belarra hemengo horma arrailduetan.
Han, T'sing leinukoen jauregi handia dago,
behiala eder eta beteratsua izan zena.
Guzi hori izan zen eta iadanik ez da, dena amaitzen da.
Gertaera eta gizasemeak beren heriotzerantz doaz,
Ibai Urdineko urak itsasoan galtzera bezala.

III

Oineztarri iheskorra da bizitza,
bere iragaitea ia sendiarazten ez duen arren.
Aldagaitza da lurraren eta ortzearen itxura;
baina zein batbatekoa den geure aurpegien itxuraldaketa!

Mendi urdinak somatzen dira iparraldeko harresien gainetik;
hiriaren sortaldean arin eta garden doa erreka.
Hemen bereizten gara, adiskidea, betirako.
Zu, itsasontzira igan eta, hamar mila legoa nabigatzera zoaz
sustrairik gabeko urlandare bat bezala.
Oi hodei bidaiari eta gogoeta noragabeak!
Oi oskorriak! Oi adiskide zaharren etsipena!
Besoaz keinu eginez esan genion elkarri adio,
gure zaldiak urratsez urrats... urratsez urrats... aldentzan ziren artean.

Zenbat maite dudan Tong mendia! Ene atseginarena da.
Ehun urte iragango nituzke han, itzuleraz gogoratu gabe.
Besoak zabaldurik nahi nuke dantzatu.
eta, behingoz, lerdoien gain guziak ukitu.

Bizitza amets bat bada,
zergatik arrenguratu?
Edan egiten dut nik egun guzian.
Balantzaka hasten naizenean
loak hartzen nau harrien ondoan;
eguzkiaren azpian esnatzen naiz;
lilien artean ezkutaturiko xorino bat abesten entzuten dut.
Zer ordu da?
Errusinolaren abestia hedatzen du
udaberriko haizeak.
Hunkiturik senditzen naiz, hasperen egiteko eran,
baina beste xorta bat edaten dut.
Eta xoriek bezala abesten dut nik ere.
Eguzkiaren ordezkari, gaua heltzen denean
ahitu egiten dira ene abestiak,
baina ordurako erabat galdu dut
inguruarekiko gonortea.

Gerlariaren emaztea, bere oihaltegian, zetazko brokatua ari da egotzen.
Oihalek, oskorriko azken erroinuek horituak, erroien oihuak sartzen uzten dituzte.
Utzi egiten du bere lana andereak. Betidanik igurikatzen duena gogoratzen du etsipenez.
Geroago eta isilago ohe bakartia. Udako euria bezala erortzen dira bere malkoak.

Mendi loratuan, gizon bi bakarrik, edaten ari
edalontzi bat, beste edalontzi bat, beste bat...
Horditurik nago, logale naiz, aldendu zaitezke.
Itzul zaitez bihar kitarrarekin, nahi baduzu.

